# HAMAIRU ATE

*aukeraketa eta itzulpena*

Joseba Sarrionandia

Mitxel Sarasketa





*erdal umore beltza*

ELKAR

# HAMAIRU ATE

AMBROSE BIERCE
HECTOR HUGH MUNRO
FRANCIS PICABIA
FRANZ KAFKA
SAKUTARO JAGUIWARA
ANIBAL MACHADO
MAX AUB
LEONORA CARRINGTON
VIRGILIO PIÑERA
KOSTAS AXELOS
GABRIEL GARCIA MARQUEZ
PERE CALDERS
GONZALO SUAREZ

## ATEARTEKO AURKEZPENA

*Umorea, Paul Valery poetak esaten zuenez, ez da hitz zehatza. Aitzitik, hitz egokia da, umorea, gusto eta koloreetaz eztabaidatzeko eta, gainera, esaldi umoretsu berri bakoitzak emendatzen du betiere bere zentzua. Horrela, azken finean, umoreak eman nahi zaion zentzua du. Zentzundunen mediokritatea eta erotasunaren galbidea ukatzen dituenak bide guti baditu, umorea da horietariko bat. Ez dakit nork esan zuen, baina egia da, umorea desesperatuaren gortesia dela.*

*Horregatik, umorerik egiazkoena beltza da. Umore beltzean irribarreaz gainera badago mistizismo bat, baina ez mistizismo dultze eta zerutiar bat, umoristak izatez infernutiarrak bait dira. Alfonso Rodriguez Castelao gailegoaren* «O Ollo de Vidro» *liburuaren hastapenean Mark Twain amerikarraren aipu bat dator: «Humorismoaren azpitik beti ageri da oinaze handi bat; horregatik ez da humoristarik zeruan (Koldo Izagirreren edizioa: Castelao, «Kristalezko Begia», Kriselu, 1976). Infernuaren ideia honetaz nahiko interesgarria da, bil-*

*duma honetan, Virgilio Piñera kubanoaren ipuin bat, hain zuzen ere «Infernua» deritzana: Infernua, azken finean, ohitura maite bat bihurtzen da.*

*Euskarazko literaturan, eta gure umore beltzaren eskasian, Jon Mirandek eman izan ditu ipuinik politenak. «Humore Beltzaren Adibideak» izenarekin argitaratu izan direnetan (Patri Urkizuren edizioan: Jon Mirande, «Gauaz Parke Batean», Elkar, 1984) batzu itzulpenak dira dudarik gabe, baina baliteke haien artean orijinalak ere egotea. Masokistaren eta sadikoaren arteko solas ezaguna eskuetan zabalik duzun liburuan ere agertzen da, hamargarren atean, Kostas Axelos izenaren pean, baina ez batarena ez bestearena ez ote den gaude, hau da, inorena ez ote den, guziena dela halegia. Ipuin tipi horietaz aparte, Jon Miranderi bere ipuin luzeagoetan ere umore beltza dario. Eta poemaren batzutan ere bai,* Clementine *delako doinuaz abestu beharreko «Kattalin» horretan esate baterako.*

*Baina ez gara euskal autoreak aurkezten ari, hamairu autore arrotz baizik. Hauk dira: Ambrose Bierce, 1842 urtean sortu eta 1913an desagertu zen Ifar Ameriketako idazlea; Hector Hugh Munro, Saki, 1870 eta 1916 artean bizi izan zen kazetari eta ipuin egile britanikoa; Francis Picabia, 1878-1953, surrealista ezaguna; Franz Kafka, are ezagunagoa, bost ipuin laburrekin agertzen da hemen; Sakutaro Jaguiwara, 1886 eta 1942 artean bizi izan zen japoniar idazlea, testu bakar batekin dago; Anibal Machado brasildarra ere, 1894-1964, nahiko ezezaguna, ipuin batekin azaltzen da; Max Aub dator gero, 1903 eta 1972 artean bizi izan zen idazle errepublikanoa, Mexiko aldean herbestean zegoelarik izkiriaturiko gauzekin: Leonora Carrington, 1917 urtean sortua eta «*Le Cornet Acoustique*» deritzan nobela ha-*

*rrigarri baten autorea; Virgilio Piñera bederatzigarrena da; hurrengoa Kostas Axelos, 1924 urtean jaiotako pentsalari grekoa; eta Gabriel Garcia Marquez dator gero, ezagunegia, izenez behintzat; Azken aurrekoa Pere Calders da, katalana, ipuin egile miresgarria; eta azkena Gonzalo Suarez, asturianoa, zine egile eta idazlea. Hizkuntza desberdinetarik itzuli ditugu, batzutan autore bakoitzaren obra orijinalean oinarriturik, bestetan bigarren eskuko itzulpenean fidaturik, hau da Sakutaro Jaquiwara, Franz Kafka eta besteren baten kasua. Gainera, beste hizkuntzatan eginiko bildumak izan ditugu haintzat, eta hauen artean ezin dugu aipatu gabe utzi, umore beltzeko bildumetan klasikoa eta eredua delako, Andre Breton surrealistarena.»*

*Gure bilduma hau, dena dela, ez dugu moldatu eredu bat segiturik, ezta kriterio zehatzekin. Posible da hemengo gauzaren bat edo beste umoretsu ez izatea ere; kasu horietan, hasieran esan bezala, umorearen zentzua emendatzea da proposatzen zaizuna. Beltza, ordea, liburu honetan bilduriko ipuinak beti dira beltzak. Beltzak, inprentako tinta legez. Edo Deabruak dituen bi orinak bezain beltzak, bata ezpainen alboan eta bestea zeuk asma zenezakeen lekuan bait ditu.*

*Baina ateartean sekretu kondari luzatu baino hobe aterik ate sartzea.*

# AMBROSE BIERCE

«Ardau sikua gozoa baino,
zentzua sendimendua baino,
zuhurtasuna umorea baino
eta inglesera garbia hizketa arruntak baino
nahiago dituzten arima argituentzat
egiten ditut ene idazlanak.

**A.B.**

## FORTUNAREN DAMA ETA ERROMESA

Erromes akitu bat bide bazterrean etzan eta loak hartu zuen, osin sakon baten ertzean. Fortúnaren damak aurkitu zuen han.

— Tonto hau —pentsatu zuen Fortunaren Damak— amets nahasi bat heldu eta osinera eroriko balitz, gizasemeek neuk erori erazi dudala esango dute. Mingarria da enetzat arrazoirik batere gabe sala nazatela; edozer egiteko gertu nago hori gerta ez dadin.

Horixe esanaz, erromesa osin barrura bultzatu zuen.

## OTSO ETA ZAKURRAK

— Zergatik izan behar dugu elkarren etsai? —esan zieten otsoek ardiei— Zakur lotsagabe horiengatik da, ohil ditzagun eta bakea ukanen dugu gure artean.

— Zuek —erantzun zuten ardiek— Badirudi zakurrak ohiltzea erreza dela uste duzuela.

## GIZASEMEA ETA ANTZARAK

— Begira itzazue urrezko arraultza miresgarriok

—esan zuen gizaseme batek, antzara bat erosi ondoren— Horrelako arraultzak egiten dituen antzarak urre mehategi bat eduki behar du bere barruan.

Orduan, gizaseme harek hil egin zuen antzara hura, baina ikusi zuen beste edozein antzaren gisakoak zituela barruak.

Gainera, eginda utziriko arraultzak berriro ikerturik, arraultza haik ere beste edozein arraultzaren gisakoak zirela ohartu zen.

# HECTOR HUGH MUNRO

*Saki* izenordearekin ezagunagoa da
kazetari eta ipuin idazle aparteko hau.
Jon Mirandek, 1956 eta 1960 urteetan,
bere narrazio biren itzulpena argitaratu zuen;
«Ipuin Kondatzailea» eta «Leiho Irekia».
Bere pertsonaiak gizarte erretratuak dira,
baina imajinaziorantza irristatuak,
eta eginerazten duten barrea garratza da.

## GONBIDATUAK

— Leiho honetatik ikusten den paisaia xarmangarria da benetan —esan zuen Annabelek—; geriza horiek, landa ferdeek eta ibarrean behera suge antzera doan errekak, eta ezkurren artean agertzen den elizdorreak kuadro eder bat osotzen dute. Halaere, erdilo eta hildurik dirudi dena, bare barea guzia. Hemen ez da sekula ezer gertatzen; ereiaroa eta uztaroa, elgorri aldiren bat, edo ekaitz suntsitzaile samar bat eta, bost urtetan behin, hauteskunde ernetzaileak; horixe da bizitzaren ohitura aldatzeko dugun guzia. Nahiko izugarria da, ez?

— Alderantziz —esan zuen Matildak—. Niri lasaigarria eta atsegina iruditzen zait. Gauza sobera batera gertatzen deneko herrialdeetan bizi izan naiz. Ez nintzen ni holakoetarako egina.

— Hori gauza desberdina da —esan zuen Annabelek.

— Ez dut sekula ahaztuko —esan zuen Matildak— Bequar aldeko apezpikuak ustekabean bisitatu gindueneko eguna. Monastegiren bateko lehen harria jarri edo antzerako zerbaitetara etorri zen.

— Zuek edozein hesturatan ere gonbidatuak hartzeko gauzak prest izaten dituzuela uste nuen nik —esan zuen Annabelek.

— Erabat prest genituen gauza guziak hamabi apezpikurentzat ere —esan zuen Matildak— baina nahasi

egin ziren denak, solasaldi labur baten ondoren, apezpiku hori gure lehengusua zela ohartzean. Bere familia eta gurea hasarre zeuden *Grown Derby* markako azpil batengatik. Haiek heredatu zuten guk heredatu beharrean, ala alderantziz, ez dut ondo gogoratzen; edozelan ere badakit lotsagabeki portatu zirela. Eta hona hemen, haietariko bat, saindu usainez inguraturik, eta sortaldekoen ohiturazko ospitalitatea erreklamatuz agertzen zela.

— Gogaikarri samarra izanik ere, senarra utzi zenezakeen berarekin, harrera egiten.

— Ene senarra ehun kilometrotara zegoen, laborari herri batetan, heuren nagusietarik bat giza-tigrea zela sinetsirik zeuden laborariak arrazoira, berak arrazoitzat zuenera, erakarri nahian.

— Giza... Zer esan duzu?

— Giza-tigrea; maiz entzun duzu giza-otsoetaz mintzatzen, ez? Otsoaren eta gizasemearen, eta deabruaren nahasmen bat dela. Bada, leku horietan giza-tigreak ere badaude, edo badaudela uste dute, eta kasu honetan sinesteko arrazoiak ere badaude, batzuk zin egin eta bestek hori ukatu ez dutelako. Baina, duela hirurehun urte utzi genuen sorginen erreketa, eta ez zaigu guk utzitako usantzak beste herri batzuek gorde ditzatela laket; gure arau mental eta moralekiko errespeto falta da.

— Apezpikuarekin baina —esan zuen Annabelek— ez zinen trauskila izango...

— Gure gonbidatua zen, eta itxuraz behintzat begikoa izan behar nintzen berarekin, baina gure ahaide arteko iskanbila aipatu eta bere familiaren portaera zuritzea besterik ez zitzaion otu; hori egin nahi izanez gero ere, eta ez dut hori egitea inolaz ere onartzen, ez zen gure etxea horretarako leku egokia. Ez nuen arazo hura

eztabaidatu, baina bakazioak eman nizkion sukaldariari, larogeita hamar miliatara bizi ziren bere gurasoak ikustera joan zedin. Sukaldari ordea ez zen trebeegia *curries* prestatzen; areago, ez dut uste sukalden ezer prestatzen trebea zenik. Uste dut lorezaintzat etorri zitzaigula lehendabizi, baina lorategirik sekula nahi izan ez genuelarik, ahuntzain laguntzaile gisa enplegatu genuen, eta uste dut lan hori ez zuela hain txarto egiten. Apezpikua, sukaldariari bakazio berezi eta premiarik gabekoak eman nizkiola jakin zuelarik, ohartu egin zen ene maniobraz eta harez geroztik ez genion elkarri hitzegiten. Zure etxean inoiz apezpiku bat ukan eta berarekin hitzegiten ez baduzu, orduan har zenezake egoera haren ideia bat.

Annabelek, bere bizitzaren historian esperientzia hain asaldagarririk ez zuela aitortu zuen.

— Gainera —segitu zuen Matildak— Gwadlipichee deritzan erreka hori urgaineztu egin zen, eurite handietan gertatzen den bezala, eta urez bete ziren etxearen behekaldea eta inguruko etxola guziak. Garaiz askatu ahal izan genituen pottokak, eta muino hurbilenera eraman zituzten morroiek. Galerian gordetzera etorri ziren ahuntz bat edo bi, ahuntzain nagusia, eta bere emaztea, eta bere semealaba batzu. Itxura herabeko oilo eta oilaskoz beterik zegoen gainerako leku libre guzia; norberak ere ez daki, uholdera arte, zenbat hegazti dituen morroien bizilekuan. Egia da antzerako gauzak gertatu izan zirela aurreragoko uholdeetan ere, baina ez nuen sekula etxea ahuntz, haur eta oilo erdi itoez beterik ukan; eta apezpiku bat, gainera, berarekin hitzegiten ez nuela.

— Esperientzia akigarria benetan —komentatu zuen Annabelek.

— Ez nion utziko uholde baldres bati *Crown Derby* markako azpil haren oroitzapena itotzen. Apezpikuari seinalatu nion bere gela zabala, idazmahai eta bainugelarekin, pitxer batzu ur hotz, horixe zela etxean berari zegokiona eta, gauzak zeuden bezala, ezin zuela gehiago eskatu. Halabaina, arratsaldeko hirurak inguruan, siestatik esnatzerakoan, apezpikua batbatean lehen sala ohi zen gelara abiatu zen, une haretan jakitoki, jantoki, ikuilu eta beste hamaika zerbitzu betetzen zituen gelara. Bere erropen itxuragatik, gure gonbidatuak jantzitokia ere hortxe zegoela zirudien.

— Zoritxarrez ez dukezu non eseri —esan nion hozki—; ahuntzez beterik dago guzia.

— Ene gelan ere beste bat dago —erantzun zidan hozki eta destainaz.

— Hara! —esan nuen— Bizirik geratu den beste bat! Besteak itota daudela uste nuen.

— Ahuntz harek ez du, baina, esperantza handirik —esan zuen— Zeren lehoinabar bat ari bait da ahuntza irensten. Horregatik irten naiz gelatik; animalia batzuri ez zaie laket jaten ari direnean inork begira ditzan.

Erreza izan zen, noski, lehoinabarraren zergatia asmatzea; ikuilu inguruak zelatzen zebilen agian, uholdea suertatu zenean, eta apezpikuaren bainugelaraino doan eskaileran gora igon zen seguruasko, badaezpadan ahuntz bat altzaturik. Agian, bainugela umelegia eta hertsiegia iruditu zitzaion lasai egoteko, eta apezpikua siesta lotan zegoeneko gelara eraman zuen bere banketea.

— Zer egoera izugarria! —esan zuen Annabelek— Pentsa ezazu: lehoinabar goseti bat etxean eta uholdea inguruetan.

— Goserik ez —esan zuen Matildak—, ahuntzez be-

terik zegoen lekua, eta egarria ukanez gero ere nahi beste ur zegoen inguruetan, baina, lehoinabar harek, lasai etzanda, lo egitea besterik ez zuen nahi. Halaere, edozeinek onartuko luke traba handia zela gonbidatuentzako gela bakarrean lehoinabar bat egotea, galerian hume, ahuntz eta oilo busti saldoak, eta sala bakarrean, halaber, apezpikua eta ni, elkarri hitzegin gabe. Ez dakit, benetan, zelan iragan nituen ordu geldo guziok, eta bazkariek ez zuten, noski, egoera hobetzen. Sukaldari ordeak munduko arrazoi guziak zituen salda ureztatu bat eta arroz erabat hondatua ateratzeko; eta ez ahuntzain nagusia ez bere emaztea, igerilari onak ez zirenez, bada, ezin ziren sotora iritsi. Zorionez, Gwadlipichee deritzan erreka, goratzen bezain arina zen beheratzen, eta egunsentia orduko morroiak palastaka itzuli ziren, anketaraino bakarrik hondoratzen ziren pottokekin. Gero, egoera zail bat suertatu zen, zeren eta alde batetik apezpikuak lehoinabarrak baino lehenago aldegin nahi bait zuen etxetik, baina beste aldetik lehoinabarra apezpikuaren ondasunen artean geldirik bait zegoen. Oztopo nabarmen bat zegoen, beraz, aldegitearen nork lehena aldatzeko. Lehoinabarrei atsegin zaizkien gauzak ez direla ugabereei atsegin zaizkien berberak, eta lehoinabarrak seguruasko nahiago zukeela ibiltzea ibiragaitea baino, eta edozelan ere ahuntz oso bat afaldu ondoren lehoinabarrari atsegin aldia ondo zegokiola adierazi nion apezpikuari. Animalia izutzeko, harma hartu eta tiro bat jaurti banu, apezpikuak eskatu zidan legez, gelatik irten eta iadanik gainezka zegoen salara sartuko zatekeen lehoinabarra. Edozelan ere, finean, biak aldendu zirenean gozadura handi bat utzi zuten etxaldean. Orain, agian, entelega dezakezu zergatik zaizkidan laket ezer ere gertatzen ez deneko paisaia loak hartu hauk.

# FRANCIS PICABIA

«Francis Picabia izan zen lehenengoa,
hitz erlazio guziak zilegi direla,
zenbat eta arbitrarioago eta aztoratzaileagoak
diren hainbesteko bertute poetikoa dutela
entelegatzen».

**André Breton**

## BEGI HOTZA

Gure heriotzaren ondoren, bola baten barrura sartu beharko ginateke, zenbait koloretako egurrezko bola batetara. Biraka bultzatuko lukete hilerriraino eta zeregin honetaz arduraturiko ehorzleek guante gardenak eramango lituzteke, maitaleei laztanen oroitzapenak gogora erazte arren.

Bere instalazioa maite zenaren plazer objetiboaz aberastu nahi luketenentzat, kristelezko bolak leudeke, beren aitaitaren edo beren anaia bizkiaren biluztasuna begiratzeko.

Inteligentziaren ildoa, *steeple-chase* kriseilua; gizakiek begirada artezeko beleen antza dute. Hilotz guzien gainetik abiatzen dira hegatsez eta estazioko nagusi dira larru gorri guziak!

## BOST MINUTUTAKO ENTREAKTOA

Lagun suitzar bat nuen, Jacques Dingue izenekoa; eta Perun bizi zena, 4.000 metrotako alturan; urte batzu lehenago abiatua zen hara, herrialde haik esploratzera, eta bertan india bitxi baten lilura nozitu zuen, honek ukatu egiten zizkion begipeak eta hura horrela zoratu zen. Ahultzen joan zen ezari ezarian, eta bizi zeneko etxolatik ezin zen ezta irten ere. Perutar mediku

batek, zeinak bertaraino lagundu bait zuen, zaindu egiten zuen eta bere eskizofrenia alibiatzen entseiatzen zen, baina hura sendaezina zela iruditzen zitzaion.

Gau batetan, gripe izurrite bat hedatu zen, Jacques Dingeri aterbea eskaintzen zion tribu tipi haretan; denak gaisotu ziren, salbuespenik gabe, eta berrehun indigena haietarik ehunda hirurogeita hamazortzi hil ziren egun guti batzutan; aurki, mediku peruarra Limara itzuli zen ikaraturik. Ene laguna ere gaitz izugarri harek harrapatu zuen, eta sukarrarekin ezin zen mogitu.

Hildako indio bakoitzak bazuen zakur bat edo gehiago, eta zakurrek laster ez zuten bizitzeko beste biderik izan beren jabeak jatea besterik; gorpuak irensten zituzten, eta horien arteko zakur batek eraman zion Dingueri berak maite zuen indiaren burua... Berehala ezagutu zuen eta hainbesteko zauzkada senditu zuen non batbatean sendatu bait zen erotasunaz eta sukarraz; indarrak itzuli zitzaizkion eta, orduan, zakurraren ahotik anderearen burua hartuta jolasten hasi zen, burua belaren bestaldera jaurti eta zakurrari ekartzeko aginduaz; hiru aldiz zuen jolastu, zakurrak sudurretik oratzen zuen burua eta ekartzen zion, baina hirugarrenean, Jacques Dinguek indartsuago jaurti zuelarik, burua hormaren kontra lehertu zen eta, alegantzia handirekin, eta bolo jokalariak egiaztatu ahal izan zuen agerturiko burmuin harek zirkunboluzio bakarra zuela; eta hain zuzen, ipurdi mami pare bat ematen zuela!

Gizasemeek, diplomak irabazi ahala galtzen dute beren izakera.

• • •

Aileza beti gure zakilak gure sabel gainean itzala.

• • •

Ahalgeak iraganaren azpian makurtzen dira.

• • •

Mirestea, gaitzestea bezala, arrazoi txarren gainean eraiki ohi da.

• • •

Hiltzear dagoen gizon ateoak apez bat eskatu du. Hobe luke emakume bat eskatzea!

• • •

Zer litzateke eliza, Jainkoaren hilobia ez balitz?

• • •

Ene pintura, bere senarrarekin larrua jo nahi ez duen emakumea da.

• • •

Hilak baino zurbilagoak dira beti beren oheak.

. . .

Paradisutik irten nintzen igande batez, ostiralean itsasertzeko larrosak ikustera joateko.

. . .

Morala leku desegokian dago praken barru horretan.

. . .

Ene atzean mintzo denak, ene ipurdiak begiratzen ditu.

. . .

Nik behin batean neskatila bati erakutsi nion itsasoa, lehenengo aldiz ikusten bait zuen; berak esan zuenez ikusgarriagoa iruditu zitzaion lursagar soroa.

. . .

Gurutzez beterik dabiltzan gizonek hilerrien antza dute.

. . .

Larrua jotzea ez da gauza modernoa; halaere, horixe da nik gehien maite dudana.

. . .

Ideia burusoilekoak dira fede guziak.

* * *

Gure zakilak begiak ukan behar lituzke, begion bidez amodioa hurbildik ikusi dugula istant batez bederen sinesteko.

* * *

Errege bat ezagutu dut, eta bere burua erregetzat hartzea da bere eromena.

* * *

Carrière maisuak behin batean ikasle bati zelan pindatu erakusten ari dela diotso: «Hertsi itzazu begiak, eta ikusten duzuna egin!»

* * *

Edozer gauza, ikusgarria gehiago izan ez dadin, aski da ez soegitea.

# FRANZ KAFKA

Zer naiz ni? Zer egiten dut hemen?
Zein da ene bizitzaren helburua?
Funtsezko galdera hauetara garamatza
Franz Kafkak bere narrazio guzietan.
Esnatu eta, batbatean, intsektua dela ohartu zen
Itxuraldaketako pertsonaia.
Ondorengo ipuineko pertsonaiak ere esango du,
bon, ni zurruna eta hotza naiz, ni zubia naiz
eta amildegi baten gainean nago.

## ZUBIA

Ni zurruna eta hotza nintzen. Ni zubia nintzen eta amildegi baten gainean nengoen. Oinak mutur batean eta hatzamarrak bestean gokaturik nituela, tinko errotzen nintzen lokatz bigunean. Ene zamarraren hegalak aldeetan linburtzen ziren. Eta ene azpian, han behean, erreka hotz bat iragaiten zen orroaka. Turista bat ere ez zen mendi zail haietaraino ausartzen; zubia ez zen inongo mapetan agertzen. Beraz, ni han netzan, esperoan; ezin nuen ezer egin itxadotea salbu. Hondatzen ez den artean, zubi batek, behin eraikiez gero, ezin dio zubi izateari uko egin.

Egun batez arrats beheran —lehenengoan, milagarrenean?, ez dakit— iritsi egin zen. Ene pentsamenduak lausoak ziren, zirkulutan biraka beti; uda ilunabar bat zen, errekaren zarata sorgorragoa, giza oinotsen zurumurrua aditu nuenean. Eneganantz dator, eneganantz! Tinka zaitez, zubi, presta zaitez, gaina, leporatuko zaizun bidaztiaren zama aguantatzeko! Bere pausoa zalantzazkoa baldin bada, lasai ezazu, mogitu gabe, baina oreka galtzen baldin badu, erakutsi egiozu zure azkartasuna eta, mendietako jainko legez, eraman ezazu bestaldera, lur segurura!

Iritsi zen; bere makilaren burdinezko puntaz ikertu zuen ene finkotasuna; ondoren, punta berberaz, ene zamarraren hegalak altzatu eta atondu zituen ene atzekaldean. Bere makilaren punta ene ile harroetan murgildu

zuen, eta luzaroan utzi zuen han, nitaz ahazturik agian, bere ingurura begirada basatiak ematen zituelarik. Baina batbatean —nik mendi eta haran gainetaz pentsatzen nuen artean— ene bizkar gainera jauzi egin zuen oin biekin. Min gotor bat senditu nuen, zer gertatzen ari zen entelegatu gabe. Nor ote zen? Haurren bat? Ametsen bat? Bidaztiren bat? Suizidaren bat? Tentaldizko edo hondamenezko espirituren bat? Eta horixe jakiteko itzuli nintzen. Zelan itzul daitekeen zubia? Bada, ene mogimendua hasi besterik ez eta, iadanik, erortzen ari nintzen, erortzen, eta istant batean urratu eta suntsitu ninduten han beheko arrokek, erreka aldetik beti lasai behatzen ninduten arroka zorrotz haiek.

## EZETZA

Neskatila eder bat kausitzen dudalarik eta «Lagunduko nauzu?» galdetzen diodalarik, berak erantzuten ez duenean, bere isiltasun honek hauxe esan nahi du:

— Ez zara titulu ospetsuko duke, ez larru gorri plantako amerikarra, begi orekatu eta lasaiduna, larrua lautada eta ibaietako haizeek gogortua, ez duzu ozeano handietan edo non dauden ez dakidan itsaso horietan bidaiarik egin. Beraz, zergatik lagunduko zaitut nik, neskatila eder batek?

Nik hauxe erantzungo nioke:

— Ez zara ohartu ez zaituela auto dotoreren batek kaleetan barrena paseatzen; ez dut ikusten zure segitaldean zaldun andanarik zure inguruan semizirkuluak egiten, lauseguak eskaintzen; zure bularrak ondo sakaturik daude zeure alkondararen barruan, baina zure gerria

eta iztarrak hantuagoak dira; iragan udazkenean hainbeste alaitu ginduen jantzia daramazu, tafetan lisuzkoa, eta halaere irribarrez zaude noizean behinka —zeure gorputza arriskuan jarririk.

Biok arrazoia dugunez, eta egia aurrez aurre ez jasotzeko, nahiago dugu, horrela, bakoitza bere etxera joatea.

## AHAZTU

Goizaldea zen. Kaleak garbi eta hutsik zeuden. Estaziorantza nindoan. Ene erlojua dorreko erloju handiarekin frogatzean konprenitu nuen, nik uste baino beranduago zela eta arinago joan behar nintzela. Berandu nindoalarik ene bideaz ere ez nintzen zihur senditzen, ez bait nuen ziudadea ondo ezagutzen. Zorionez, polizia bat zegoen hurbil. Beregana joan eta arnas hestuka nion galdetu ea zein zen ene bidea. Barre egin eta esan zidan:

— Bidea ezagutu nahi duzu?

— Bai —esan nuen— nik ez bait dut ezagutzen.

— Ahaztu, ahaztu ezazu —esan zuen, eta itzuli egin zen, bere bostean barre egin nahi duenaren gisan.

## HILAK

Sarritan erortzen dira gizon hilak kalean, eta han geratzen dira. Orduan, merkatariek ireki egiten dituzte beren ateak, salgaiez hornituak, arinka irtetzen dira, hila

jaso eta etxeren batetan gordetzen dute, eta berriro irtetzen dira kalera, irribarrea ezpainetan, esanaz: «Egunon... Zerua gris dago... Zetazko zapi asko saldu dut... Bai, gerla haroa da...»

## ERREGEA ETA MEZULARIAK

Hautatzeko eman zitzaien, Errege ala Erregeren mezulari izan. Haurren gisan, mezulari izan nahi zuten guziek. Horregatik, mezulari besterik ez dago, arineketan dabiltza eta —Erregerik ez dagoenez— zentzurik gabe daramatzate mezuak, bata bestearen ondoren. Gustora hilgo lituzkete beren buruak, baina ez dira ausartzen, zerbitzu horretan fideltasuna zin egin bait zuten.

# SAKUTARO JAGUIWARA

Bere hizlauak erritmo musikala omen du japonieraz. Hori ez da, itzulpenik itzulpen, hemen geratuko. Halabaina, bere ipuinek beste errealitate batetara gidatzen gaituzte edozein hizkuntzatan.

## HIL EZ ZEN OLAGARROA

Olagarro bat goseak zegoen. Akuari batetan utzi zuten, goseak hiltzen eta zarraturik, luzaro luzaroan. Argi zurbila, bidrioa zeharkatuaz, tristeki barreiatzen zen arrokaren itzal dentsoan.

Ahaztu egin zuen mundu guziak akuari iluntsu hura. Olagarroa hilik zegoela suposa zitekeen, han barruan oskorriko argitasunak doi doi argituriko ur ustela besterik ez bait zen ikusten.

Baina olagarroa ez zen hil. Arrokaren bestaldean ezkutaturik zegoen. Eta bere loalditik esnatzean, olagarroak, gose izugarria sofritzen zuen, gartzela bakartian egunik egun, ez bait zegoen han jatekorik ez elikadurarik batere berarentzat.

Orduan, bere garroak jaten hasi zen. Bat jan zuen lehendabizi, beste bat gero. Iada garrorik gehiago ez zedukanean, bere erraiak irensten hasi zen, zati bat eta gero bestea.

Honela, bere gorputza jan zuen olagarroak. Bere soina, bera larrua, bere burmuina, bere sabela; bere burua osorik.

Goiz batetan akuariaren zaintzailea ailegatu zen eta, akuarioaren barrukaldera begiratuaz, ur iluna eta urbelar malguak ikusi zituen soilik. Olagarroa erabat desagerturik zegoen.

Baina ez zegoen hilik olagarroa. Oraindik ere bizirik zegoen akuario zimel eta abandonatu haretan.

Mendetan zehar, eternalki behar bada, bizirik zegoen kreatura ikustezin bat, eskasia eta insatisfakzio izugarrienaren gatibu.

# ANIBAL MACHADO

Herri giro eta gai arruntetan zentzu ezkutuak eta
poesia berezia hatzematen dakiten idazle brasildarren
artekoa da Anibal Machado.
Biaduktoko neskatila suizidatuaren istorioan ere,
hiriko jendearen kronika legez beti,
gertaera goibeletik giro harrigarri
eta poetikora eramanen gaitu.

## BIADUKTOKO SUIZIDA

Neskatilak biaduktora igan eta Jainkoari eman zion bere arima. Leku txarra zen hura gorpua sokatik zintzilik egoteko, zeren azpian kalea bait zegoen, jendez beterik.

Argi gorriak eragotzi egin zuen transitoa, harik eta bonberoek zeruko gorpu hura kendu arte.

— Ba ote du bragarik?

— Badu.

— Ez du bragarik.

— Bai, badu.

Motoristak begira daude. Soldadoak begira daude. Jendea begira dago. Zalantzan daude oraindik, braga duen ala ez. Orduan haizeak, halan deliberatu ondoren, neskatilaren gona astindu du. Zum-zum entzuten da jende multzo artean.

— Ez du bragarik.

Komisarioak handik aldegiteko esaten die kalean bildu direnei. Debekaturik dago begiratzea. Lanean ari dira bonberoak. Gauak inguratu egiten du biaduktoa. Haizeak biluztu egin du neskatila suizidatua. Astroen arraildura, eta izar berri bat hasten da goian zintzilik dagoen neskatilaren gorpuan. Izarniatzen.

Samindurik daude andereak, zerutik izar berri hura ahalbait arinen kendu dezatela bonberoei eskatzen, ez bait da komeni hiriaren gainean dirdiraka luzaroan egon dadin. Eta bonberoak lanean ari dira, gizonak

handik behetik zeuri, biaduktoko suizidatu hori, zeuri begira dauden artean, zutaz liluraturik baina isilik guziak; hantxe dago zeure okina ere, zeinagatik hil bait duzu zure burua, okin hura, zeina berandu hasi bait da zutaz maitemintzen, zure biluztasuna gaueko zeruan kriseilu legez azaltzen, kale bete beteko jende zurumurruaren gainean ikusi zaituenean eta gero.

# MAX AUB

Espainerazko literaturan ahaztu samar
geratzen ari den idazle honek,
Mexikoko bere herbestean
izkiriaturiko «Crimenes Mexicanos» ipuintxoekin,
umore beltzaren gainak ukitu zituen,
mexikanoen izakera ere doi doi ikertzen zuela.

## HILKETA MEXIKANOAK

Zein akabatu, horixe zen ene zalantza bakarra: linotipista ala zuzendaria. Hauxe hautatu nuen, entzunagoa. Zetatik zotara dagoen aldea.

• • •

Ez, nik ene burua hil behar nuen. Baina pistola enkaskilatu zitzaidan. Benetan, neuretzat zen azkenengo bala. Zer axola bateren batzu ene aurretik eramatea? Han, leihotik, ez zen batere salbatzen. Ene ehiztari denboran bezala.

• • •

Jainkoa hil gauza guzien gainetik, eta lagun urkoa ere akabatu ahalbait, harik eta mundua esku ahurra bezain garbi geratu. Bertan harrapatu ninduten. Futbol zelai haretan: hainbeste idiota eserita! Eta ni ametrailadoraz segan, segan, segan. Lastima, amaitu orduko harrapatu nindutela.

• • •

Bere izena oroitzen ez nuelako hil nuen. Zu ez zara sekula izan Zeremonialeko nagusiordea, ni bai, nagusi funtziotan gainera. Eta Lehendakaria ene aldamenean,

ni iladan zetozetanak aurkezten, eta pertsonaia hura, iladan, iristen, iristen...

* * *

Nik laugarren tomoa berari utzi niola, eta berak ezetz erantzuten zidan! Eta ene liburutegian liburu haren hutsunea, hilobi bat bezala...

* * *

Betokerra zen eta bekaitzez soegiten ninduela iruditu zitzaidan. Bekaitzez begiratzen ninduen! Hemen, edozein hilda ere, zerraldo dagoela esaten da.

* * *

Hainbeste istorio! Zer axola bata ala bestea! Klienteak zeuk hautatzen dituzu ala?

* * *

Niri asko gustatzen zait zinea. Ni funtzioa hasten deneko ordu esaktoan ailegatzen naiz beti. Eseri, lasaitu, finkatu eta hitz bat ere ez dut galtzen, sarrerako xartela ene diruz ordaindu dudalako, gainera ikastea asko gustatzen zaidalako. Ez dut eragozpenik nahi, eta iladaren erdian eseritzen naiz, horregatik, ene aurretik inor iragan ez dadin. Ez dut aguantatzen! Eta bikote hura zurumurruka egondu zen notiziero unibertsalaren denbora guzian. Ene desatsegina erakutsi nien, nehurrian. Nahiko isilik egondu ziren marrazki animatuen filmean zehar, ez zen hain ona eta gainera ikusirik nuen (ez da-

go hori emateko eskubiderik, estrenuko zinetoki batetan). Dokumentalean zehar solasean aritu ziren berriro. Asaldaturik itzuli nintzen heurengana, eta bost minuturako isildu ziren, baina filmea hasi zenean, ordukoa iadanik ezin zen aguantatu. Inguruko guziak enekin ados zeudela iruditu zitzaidan, eta seseka hasi nintzen. Orduan ene aurka jarri ziren guziak. Injustoa zen hura. Oraindik ere mintzo zen bikoteari zuzendu nintzen, oihuka:

— Isilduko ote zarete inoiz!

Orduan, gizon harek gordinkeria bat esan zidan. Niri! Orduantxe atera nuen nik ene burdintxoa. Hari eta besteei, ea isiltzen ikasten zuten.

...

Nik semea nahi nuen, jauna! Laugarren alaba erditu zidanean, akabatu egin nuen.

...

Urdaileko mina nuela hil nuen.

# LEONORA CARRINGTON

Bere marrazkietan tintak
espazio guti okupatzen zuen,
gainerako lekua enigmarena zen.
Elkar ezagutu genuenez geroztik
paseatu egiten ginen arratsaldeetan,
ziudadean galdurik.
— Gu, zuhaitzak biluzten dituzten hegaztiak gara
—esan zidan behin batean—. Hau egia da,
ez da metafora bat.

## DEBUTANTEA

Debutantea nintzenean sarritan joaten nintzen Jardin zoologikora. Horren sarri joaten nintzen ezen animaliak ere hobe ezagutzen bait nituen ene adineko neskatoak baino. Izan ere, mundutik ihes egiteagatik egoten nintzen egunero Zoologikoan. Hobekien ezagutu izan dudan animalia hiena gazte bat zen. Berak ere ezagutzen ninduen; guziz argia zen; nik frantsesera irakatsi nion eta, ordainez, berak bere mintzaira irakatsi zidan. Horrela ordu atsegin asko pasatu genuen.

Maiatzaren aurreneko egunean, gure amak dantzaldi bat antolatu zuen ene ohorez; sofritzen iragan nituen gau osoak: higuina izan diet beti dantzaldiei, batez ere enetzat zelebraturikoei.

1934 urteko maiatzaren leheneko goizean, arras goiz bisitatu nuen hiena hura. «Hau nazka —esan nion—, gaur arratsean ene dantzaldira joan behar dut».

— Zurea bai suertea —esan zuen berak—, ni gustora joango nintzateke. Ez dakit dantzan, baina solasa eman nezake.

— Hanitz gauza egonen da jateko —esan zuen—, etxera janari bete kamioiak datozela ikusi dut.

— Eta kexatu egiten zara! —erantzun zion hienak gaitzetsiaz—. Ni, egunean behin baino ez dudala jaten, eta zaborreria besterik ez!

Orduan, ideia ausart bat heldu zitzaidan, eta ia barre egin nuen.

— Ene ordez joan zintezke zu.

— Ez dugu elkarren antz handirik, bestela gustora joango nintzateke —esan zuen hienak apur bat triste.

— Aizu —esan nuen—, gaueko ilunbetan ez da hain ondo ikusten; maskaraturik joaten bazara, eta jende artean, inor ere ez da ohartuko. Gainera, altura berdintsukoak gara guti gora behera. Zeu zara ene lagun bakarra, joan zaitez zu mesedez.

Bera pentsatzen jarri zen, nik banekien onartzeko gogoa zuela. «Konforme» esan zuen batpatean.

Oso goiz zen, eta ez zegoen goardiarik asko. Arin ireki nuen kaiola eta berehala irten ginen kalera. Taxi bat hartu genuen, eta gure etxean oraindik lo zeuden guziak. Ene gelan, arratsean eraman behar nuen soinekoa atera nuen. Luze samarra zen eta hienari zaila egiten zitzaion ene oinetako takoidunekin ibiltzea. Guante batzu aurkitu nituen bere eskuak disimulatzeko, iletsuegiak bait ziren ene eskuen aldean. Eguzkia ene gelara sartu zenean, buelta batzu eman zituen bertan ahalbait artez ibiltzen entseiatuz. Gure zereginotan ari ginelarik, ama agertu zen, egunona ematera, hiena ohe azpian ezkutatu baino ia lehenago zabaldu zuen atea. «Zure gelan ez dago usain onik —esan zuen gure amak leihoa irekiaz— arratsa orduko bainu usaintsu bat hartuko duzu ene gatz berriekin». «Ondo», esan nuen nik. Ez zen luzaroan geratu ene logelan, uste dut hats hura gogorregia zela beretzat.

«Ez zaitez berandu etorri gosaltzera», esan zuen amak ene gelatik irten zenean.

Zailena aurpegirako maskara bat aurkitzea zen. Ordurik ordu ihardun ginen bilatzen; ene ideiak ez zitzaizkion laket, ezetz esaten zuen. Finean, hau esan zidan: «Uste dut soluzioa aurkitu dudala. Neskamerik baduzu?»

— Bai —esan nuen, harriturik.

— Bon, ondo. Zuk dei egiozu, eta sartzen denean erasoko dut eta kendu egingo diot aurpegia; gaur arratsean, ene aurpegia eraman beharrean, berea eramango dut.

— Hori ez da gauza praktikoa —esan nuen—; aurpegirik gabe, hil egingo litzateke agian; bateren batek bere gorpua aurkituko du eta gartzelara sartuko gaituzte.

— Hura jateko beste badut nik gosea —erantzun zuen hienak.

— Eta hezurrak?

— Hezurrak ere jango ditut —esan zuen berak—. Orduan, konforme?

— Baina baldintza batekin, aurpegia kendu orduko hil behar duzu; min handia egingo diozu bestela.

— Bon, berdin zait.

Urduri samar nengoen Mariari deitu nionean, neskameari. Nik ez nuke halakorik egundo egingo, dantzaldiei horrenbesteko higuina ez banie. Maria sartu zenean hormarantza jiratu nintzen, hura ez bait nuen ikusi nahi. Egia esan, guti iraun zuen. Oihu labur bat eta kito. Hienak jaten zuen artean, nik leihotik soegiten nuen.

Minutu batzu geroago, berak esan zuen: «Ez dut goserik gehiago; hor daude oraindik oin biak, baina boltsatxo bat baldin baduzu, gero jango ditut».

— Armairuan aurkituko duzu lili horiz bordaturiko boltsa bat. Barruan dauden paineluak atera eta har ezazu.

Horixe egin zuen. Eta gero esan zuen: «Orain jira zaitez eta begira zer polit nagoen!» Ispiluaren aurrean, hienak miretsi egiten zuen beregan Mariaren aurpegia. Arreta handiz jana zuen aurpegia, hegiz hegi, justuan

behar zuena utziaz. «Bai, lan egokia egin duzu», esan nuen. Arrats aldera, hiena guziz jantzirik zegoela, esan zidan: «Guziz sasoian senditzen naiz. Zihur nago gaur gauean arrakasta izango dudala».

Behekaldeko musika luzaroan entzun ondoren, zera esan nion: «Zoaz orain, eta oroit ezazu ez duzula amaren alboan jarri behar: igarri egingo luke zu ez naizela ni. Besteak ez ditut ezagutzen. Suertea». Joaterakoan, mosu bat eman nion, baina usain erabat txarra zerion. Abaildurik zegoen gaua. Egunean zehar izandako emozioek nekaturik, liburu bat hartu eta leiho irekiaren hurrean lotu nintzen egonera. Jonathan Swiften *Gulliver's Travels* liburua irakurtzen geratu nintzela oroitzen dut. Handik ordu betera edo, zoritxarrezko lehen zeinua agertu zen. Leihotik saguzar bat sartu zen xilioka. Ni saguzarrek izutu egiten naute. Besaulki baten ostean ezkutatu nintzen, haginak kraskan. Belaunikatu nintzenerako, hegalen zafladak ate aldetik heltzen ziren orroa handiek ito zituzten. Gure ama sartu zen, amorruz zurbil.

— Mahaian eseritzearekin batera —esan zuen— zure ordez zegoen gauza horrek, zutiturik, esan du: «Usain txar samarra darit, ez? Bon, nik ez ditut pastelak eta holakoak jaten». Eta, ondoren, bere aurpegia kendu eta jan egin du. Izugarrizko jauzi bat eman eta leihotik desagertu da.

# VIRGILIO PIÑERA

La Habana hirian sortu zen 1912 urtean,
baina Buenos Aires aldean
herbesteraturik bizi izan zen 1946 eta 1958 urteen artean.
Gero, sorlekura itzulirik,
Iraultzak homoseksualitatea ametitzen ez zuen garaian,
prolemak izan zituen 1979 urtean hil arte.
Bere ipuinetako humorismoa aluzinantea,
angustiatua eta ironikoa da.

## LO EGIN EZINEAN

Goiz oheratu da gizona. Ezin du loak hartu. Itzulika ari da ohean behin eta berriro. Izera artean endregatzen da. Irakurri egiten du alditxo batez. Berriro itzali du argia. Baina lorik egin ezin. Goizaldeko hiruretan jeiki da. Alboko laguna esnatu denean, lorik ezin duela egin aitortu dio lagunari. Aholkua eskatu du. Paseatzeko gomendatu dio lagunak, ea horrela apur bat nekatzen den. Gero ezki ura edan eta argia itzal dezala. Horixe egin du, baina halaere ezin du lorik egin. Berriro jeiki da. Oraingoan medikuagana doa. Beti bezala, medikua berritsua da, baina gizona ez du loak hartzen. Goizeko seiretan errebolberra kargatu eta tiro bat desarratu du bere buruan. Hil egin da gizona, baina ez du loak hartu ahal izan. Lo egin ezina arras iraunkorra bait da.

## INFERNUA

Haur garenean, infernua ez da deabruaren izena besterik gure gurasoen ezpainetan. Gero ideia hori konplikatu egiten da, eta orduan ohean iraultzen gara, adoleszentziako ordu amaigabeetan, erretzen gaituzten sugarrak —imajinazioaren sugarrak!— itzali nahian. Geroago, gure aurpegiek deabruaren antza hartzen ari direlako, geure burua ispiluetan begiratzen dugunean, in-

fernuaren ideia bildur intelektual bat bihurtzen da, eta hainbesteko angustia horretatik ihes egiteko bera deskubritzea besterik ezin dugu egin. Zahartzaroan, infernua hurbilegi dago eta kalte derrigorrezkotzat onartzen dugu, eta antsia ere erakusten dugu infernua sufritzeagatik. Geroago oraindik (eta su artean gaude iadanik), erretzen ari garelarik lekura agian egoki gintezkeela otutzen zaigu. Mila urte iraganda, ea oraindik ere sofritzen dugun galdetzen digu deabru batek, momenturako aurpegi bat erakutsiaz. Errutinaren aldea sofrimenduarena baino askozaz handiagoa dela erantzuten diogu. Azken batean, infernutik irten gaitezkeen eguna ailegatzen da, baina inondik ere ez dugula irtengo erantzuten dugu; ezen, nork uzten du ohitura maite bat?

## ERRENEN GAUZAK

Errenak, errenak izan arren, joan etorrian ibiltzen dira kaleetan. Muleta bakarreko errenak daude, eta muleta biko errenak, baina ez batzuk ez bestek ez dute lortzen gauza handirik, jendeak albotik pasatzean ia oharkabean besterik ez die begiratzen. Interesgarriagoak lirateke jendearentzat bandatan elkartu eta bakoitza bere zango galdua erreklamatzen hasiko balira. Baina ez, errenari ez zaio beste errenen laguntza gustatzen; itsuak, alderantziz, elkarrekin ibiltzen dira, beren makilekin zarata eginez...

Halaere, errentasunari dagokion bakardade eta lotsa horri amore eman ordez, duela guti elkar kausitzeko punduan egon ziren erren bi.

Erren hauetarik batek (eskuineko zangoa bait zuen

errena) bere zango onarentzat behar zuen zapata bat erosi, eta zapateria aurrean geratzea erabaki zuen —diskrezioarekin, noski— ea ezkerreko zangotiko errenen bat eskuineko oinetako bila ailegatzen zen.

Bere arrazonamendua miresgarria zen: Zertarako erosi bi zapata bat aski bazitzaion? Eman dezagun bi zapatok 2.000 pezeta balio dutela: Zergatik galdu diru horren erdia modu tontoan? Argi dago errenek logika zehatz bat dutela.

Halabaina, bizitza ez da dirudien bezain singlea. Horixe gertatu zen. Berak hainbesteko espero zuen beste erren horrek ere ideia berbera ukan zuen, baina, ostera, beste zapateria bat aukeratu zuen itxadoteko.

Hori da hori kemena. Urteak iragaiten ziren, zorioneko enkontrua ez zen sekula suertatzen, baina ez ziren horregatik etsitzen. Jendeak, eskena odoltsu eta izugarrientzat besterik ez bait du imajinaziorik, errenok espia internazionalak zirela imajinatu zuen, baina haien zapatak malenkoniaz begiratzen zituzten soilik eta inork ere ez zituen poliziara denuntziatu.

Halaere, beren bizitzetan ez da guzia halabehar eta drama. Halako egun batez, andere erren bi (ez abariziagatik, baizik eta ekonomia makalagatik) gure erren gizonezko bien ideia berbera ukan zuten eta, zorionak hala nahirik, gure istorioko errenak urterik urte zeuden zapaterien aurrera etorri ziren.

Erren gizonezkoek, hasieran, indiferentzia nabarmenez begiratu zieten. Andere zapatak gizonezkoen zapatekin ezkondu ezin badaitezke, zertara zetozen hara anderezko erren haik? Ezen anderezko erren bat gizonezko erren baten alboan egotea edozein lekutan da logikoa, salbu eta zapaterian.

Baina ar emeen arteko indar erakarlea fuertea da.

Egun batez, finean, andere gizon errenek amoroski begiratu zioten elkarri, eta beren muletatan sostengatuaz besarkatu ziren, elkarren bihotz taupadak entzuteko.

# KOSTAS AXELOS

«Kostas Axelos izeneko bat
agertzen da katalogoetan, *Marx eta Teknika,*
*Etika Inestable baten Alde*
eta horrelako liburu trabukuen egilea.
Esaidazu, autore hau eta zure bilduman
agertuko dena pertsona bera diren.
Baliteke *Etika Inestable baten Alde*
delako hori ere umore beltzekoa izatea».

**J. E. Urrutia**

## EGIA

— Amerika aurkitzera noa —aldarrikatu zuen egun batez Cristobal Colon harek.

Eta joan egin zen. Bidaia luze baten ondoren, lurra ikusi zuen batbatean.

— Amerika da —esan zion bere jendeari.

Inguratu eta lurrera jetsi ziren. Hondartzan indio talde bat ikusi zuen, elkarren artean hitzegiten ari zena. Elkarri begira geratu ziren bi taldeak. Indioen buruzagia Cristobal Colon haren talderantza abiatu zen maiestatez.

— Hi al haiz Cristobal Colon?

Baietza entzun zuenean, bere jendearengana jiratu eta zera esan zien:

— Mutilak, hemendik aurrera ez diagu ezkutatzen zertan ibili beharrik; aurkituta giaudek.

## LENGOAIA

Atlantidako zazpi biztanle paseoan dabiltza. Poeta. Pintorea. Apaiza. Bandidoa. Lukurrero edo usuragilea. Maitemindua. Pentsalaria. Koba baten aurrera heltzen dira. Bai leku egokia inspiraziorako —esan du poetak. Pintatzeko gai ederra —dio pintoreak. Leku ona otoitz egiteko —dio apaizak. Ezta ametsetan ere enbos-

kadetarako holako lekurik —aitortzen du bandidoak. Gordailu paregabea —murmuriatzen du lukurreroak. Hau da hau ene maitasunarentzako babes lekua —egiten du maiteminduak amets. Koba bat da —gehitzen du pentsalariak.

## MAITASUNA

Gau aldera, ikasle alemaniar bat dantzaldira doa. Bertan neska gazte bat ikusten du, txit ederra, ile beltzekoa. Bere lepo luzearen inguruan, zinta mehe eta beltz bat, kibizto tipi batekin. Ikaslea gau osoan dabil berarekin dantzan. Egunsenti aldera, bere etxera darama. Jantziak kentzen hasten zaionean, neskak erregutu egiten dio, ez kentzeko mesedez lepo inguruan daraman zinta. Larru gorrian eta biluzik daduka bere besoetan, baina bere zintatxoarekin. Elkar maitatzen dute, eta loak hartzen ditu gero. Ikaslea lehena da iratzartzen, eta burko zurian dagoen neskaren aurpegiari begiratzen dio, lehengo lekuan segitzen du zintak. Hartu eta zintaren kibiztoa desegin du. Eta neskaren burua libratu eta lurrera doa.

## HOMOSEKSUAL BIKOTE BAT

Masokistak: Hire oinetara jartzen nauk, gaur egidak benetan min, behin ere baino min gehiago, ahal duan gehiena. Sadikoak: Ez.

Masokistak: Eskerrik asko.

## IZANA, ETA DENAREN ESENTZIA

Xinar jakintsu bat paseoan dabil bere dizipuluarekin. Zubi baten gainetik ari dira pasatzen.

Zein da zubiaren izana edo esentzia? —galdetzen du filosofo gaiak.

Maisuak begiratu dio eta, bultzada batez, ibaira bota du dizipulua.

# GABRIEL GARCIA MARQUEZ

Aracataca herriskan, 1928 urtean
Colombia aldean sortua.
Bere «Cien Años de Soledad»
literatura unibertsaleko gailurretarik bat da.
Hemen itzuliko dugun bere ipuina
Kasandraren mitoaren bariazio bat da,
humore beltzaren errejistroan.

## ZERBAIT IZUGARRI GERTATU BEHAR DA HERRI HONETAN

Imajina ezazu herri tipi bat, hantxe bizi da andere zahar bat bere semealaba biekin, bata hamazazpi urteko mutila eta bestea hamalauko neskatila. Bere semealabei gosaria ematen ari da, anderea, eta arduraturik ari dela igartzen da. Zer gertatzen zaion galdetu diote semealabek, eta berak hau erantzun du: «ez dakit, baina herri honetan zerbait izugarri gertatu behar delako susmoarekin esnatu naiz». Semea eta alaba irribarrez daude amagatik. Zaharren susmoak direla, gauza normala.

Semea bilar jokora doa eta, karanbola errez errez bat jo behar lukeen unean, «honenbeste diru ezetz» esan dio bere lagunak. Irribarrez daude guziak; bera ere bai. Egin du kolpea, eta ez du egin karanbolarik. Dirua ordaindu du, eta galdetu diote: «baina zer gertatu da karanbola hain erreza ez egiteko»? Berak honela erantzun du: «erreza zen benetan, baina gure amak goizean esan didan gauza baten ardura geratu zait, herri honetan zerbait izugarri gertatu behar dela eta». Barreka daude guziak, beragatik, eta dirua irabazi dion laguna etxera abiatu da, bere amagana edo ilobagana edo, finean, edozein ahaidegana. Bere diruarekin zoriontsu, hau dio: «Damasori modurik errezenean irabazi diot gaur dirua, tontoa delako». «Eta zergatik da tontoa?» Erantzun du: «bada, karanbola errez errez bat egin ez duelako, bere

amak gaur goizean herri honetan zerbait izugarri gertatuko dela pentsatu duela eta». Orduan, esan dio bere amak: «ez zaitez zaharren pentsamenduez burlatu, sarritan egia bihurtzen bait dira».

Ahaide batek entzun du hori, eta okela erostera joan da gero. Harakinari esan dio: «imini egidazu okela libra bat»; eta, harakina okela ebakitzen ari dela, hau gehitu dio: «hobe bi, zerbait izugarri gertatu behar dela diote eta, hobe da gerturik egotea». Okela hartu eta badoa. Harakinak, beste andere bat libra okela erostera ailegatu denean, esan dio: «eraman itzazu bi, ezen honaino iritsi da jendea zerbait izugarri gertatu behar dela esanaz, eta gauzak erosten ari dira, gertu egoteko». Orduan, hau dio atsoak: «semealaba ugari ditut, begira emaidazu lau libra». Lau libra eraman ditu; eta ipuina luza ez dadin esango dut, ordu erdian amaitu da harakinaren okela guzia; beste behi bat hil du, eta hori ere guzia saldu. Eta esamesa hedatuz doa. Laster, mundu guzia dago herrian zer gertatuko ote den esperoan. Lanak gelditu egin dira eta, batbatean, arratsaldeko ordu bietan, beti bezalako beroa egiten du. Norbaitek hau esan du: «ohartu zara zelako beroa egiten duen?»

«Baina herri honetan beti egin du beroa».

(Hainbesteko beroa egin ohi du herri honetan non musikoek breaz lotutako instrumentoak zituztenean itzalpetan jo behar bait zuten, eguzkitan joez gero zatika eroriko bait lirateke tresnak).

«Halaere, ez du sekula ordu honetan hainbesteko berorik egin».

«Baina ordu bietan egin ohi du beti berorik gehien».

«Bai, baina ez orainbesteko beroa».

Herri desertura, enparantza desertura, batbatean, xorino bat jetsi da, eta abots hau hedatu da: «xorino

bat dago enparantzan». Eta mundu guzia dator, izuturik, xorinoa begiratzera.

«Baina, jaun andereok, beti egon dira pausatzen diren xorinoak».

«Bai, baina sekula ere ez ordu honetan».

Hestutu egiten da jende arteko giroa, hazi egiten da tentsioa eta, iadanik, etsiturik daude herriko biztanleak, aldegiteko gogoaz, eta aldegiteko ausardiarik gabe.

«Ni bai ausarta naizela —oihukatu du batek—. Ni banoa».

Hartu ditu bere muebleak, bere semealabak, bere abereak, karro batetara sartu ditu eta kale nagusian barrena abiatu da, herri gizagaisoa berari begira geratzen dela. Harik eta esan arte: «hori aldegiten ausartu bada, orduan gu ere bagoaz», eta herria erabat desegiten hasi dira. Gauzak, abereak, dena daramate.

Eta Herria uzten azkenetarikoa den batek, hau dio: «ez bedi zorigaitza gure etxe bakartietara etorri», eta orduan sua eman dio bere etxeari, eta beste guziek ere berdin izeki eta erre dituzte beren etxeak.

Benetako eta izugarrizko bildur ikaraz doaz guziak ihes, eta haien guzien erdian lehen susmoa eduki zuen anderea doa, oihuka: «neuk esan nuen zerbait izugarri gertatu behar zela, eta eroturik nengoela esan zidaten».

# PERE CALDERS

«*Ohar biografikoa:* Ene izena Pere da,
eta bi habizen gehiago.
Herenegun sortu nintzen eta gaur etzi da.
Ea zelan iraganen dudan datorren asteburua,
orain ez dut beste ezer gogoan».

**P.C**

## TRAMITE ARAZOAK

Kondenatuari esan zioten bere azken desira eskatzeko eskubidea zuela, baina kondenatuak deusere ez zuela eskatuko erantzun zuen, horretan ez zirela ezelan ere ados etorriko eta.

## ITSUTASUNA

Zerura joatearen eta etxean geratzearen artean, nahiago ukan zuen bigarren aukera, nahiz eta hain handia izan beste aukeraren aldeko propaganda, nahiz eta bere etxean itogin eta beste ezbehar ugari egon.

## TRENA

Inork ere ez zion esan nahi trena zer ordutan iragaiten zen. Maletaz hain kargaturik ikusten zuten, non pena ematen bait zien han trenbiderik ez estaziorik sekula ere ez zela izan berari adierazteak.

## COPYRIGHT

Norbaitek egin nau, eta saldu naute. Oraindik ez da-

kit nork kobratu dituen eskubideak, ez dakit negozio ona ala txarra izan naizen.

## ZERBAITEN BILA

— Butanoa kobratzera nator —esan zuen kobratzaileak.

— Ez dugu butanorik —erantzun zuen andereak.

— Orduan elektrizitatea —esan zuen berriro funtzionarioak.

— Baina ez dugu elektrizitaterik.

— Eta ura zer?

— Ez dugu urik.

— Orduan, mesedez, bortxatu egingo zaitut, horrek ez du kalterik eta.

## BESTE LURRALDETAKO OHITURAK

Aloba tribuko indioak itsuak dira, salbuespenik gabe, baino oso lagunkoi eta abegikorrak. Bere etxera gonbidatzen zaituztenean beren anderea eskaintzen dizuete eta, gainera, heurek atontzen dizute ohea. Baina zera: anderea gustatzen ez bazaizu, eta onartzen ez baduzu, berehala ebakiko dizute zintzurra, gaizki zorrozturiko sukarri batez.

## AURRETIK EZIN DA JAKIN

Autoaren lau erroberetarik batek alderantziz ema-

ten zituen bueltak. Baina horixe zen errobera on bakarra, guziok suntsitu ginduen kurba haretarik hurrindu nahi bait ginduen.

## MILITAR ISTORIOA

Leihotik salto egiteko agindu balie, alegrantziaz egingo zuketen salto, buruzagi harengan konfidantza itsua zutelako.

Baina behin batean agindu egin zien leihotik salto egiteko, eta desertatu egin zuten guziek, horrelako gauzak erabakitzen dituen gizona batere fidagarria ez delako.

## AITORPENA

Ene amoranteak esan zidan bular bat baietz, baina bestea ezetz, hitzemana zuela. Hasarrekor eta enekoia, enetzat zen bakarra ere galdu nuen.

## HAUTSETATIK GATOZ ETA

Bere etxe aurrean egin zuten zuloa. Ez zioten esan nahi zer obra zen, igerileku bat pendiz baten oinarria. «Sorpresa bat izango da», erantzuten zioten beti bere galderei. Eta sorpresa izan zen, ezen, nehurriak ondo hartu eta gero, kristaukiro ehortzi bait zuten bertan.

## DISKREZIOA

Pentsatzera gonbidatu ziotenean, berak ez zuela inor mindu nahi eta bere etxean pentsatuko zuela erantzun zuen.

## ARIMAREN ISPILUA

Ez genuen sekula lehenago elkar ikusi inon, baina ene auzoko baten antza zuen, hainbeste non bihotzez saludatu bait ninduen: bera ere konfunditu zen.

# GONZALO SUAREZ

Oviedo hirian sortua 1934. urtean.
Bai literaturan bai zineman,
aulki ofizialetatik beti lekora,
estilo arras pertsonal bat landu du,
bere narrazioak jolasaren kaleetatik
muga mugetaraino eramanaz.
Ondorengoak, «Trece Veces Trece»
liburuko detektibe istorioak dira.

## NON LURRA ESFERIKOA DELA FROGATZEN DEN

Gizon harek ez zuen sudurrik, ez begirik, ez ahorik.

Ilez estalirik zuen aurpegi guzia.

Ene ikerketa ez zen erreza izan, gero ikusiko duzuenez.

Abioi biletea eman zidaten, eta antipodetara joan. Eta handik, irtendako lekura itzuli nintzen.

Munduaren beste aldetik.

Arretaz egin behar ziren gauzak, horretan bait zegoen ihardun guziaren arrakasta.

Horrela bakarrik aurkitu nuen aurkitu nuena, eta hirurogeita zazpi orrialdeko informe bat izkiriatu nuen.

Zeinetik deduzitzen bait zen, gizon hura bizkarra emanaz zegoela halegia.

## KONTZERTUAREN PREZIO EGOKIA

Ezaguna da denok dugula prezio bat.

Baina gizon hura arrazista zen: aberatsak gorrotatzen zituen.

Eta ezetz esan zion behin eta berriz biolina aberatsei jotzeari.

Neuri hots egin zidaten arazoa ikertzeko.

Biolinista harekin mintzatu nintzen, bere baldintzak zeintzu ziren galdetu nion.

Ehun mila bakoitzak imini eta hamar pertsonarentzat joko zuen gaztelu abandonatu batetan.

Musikazale aberatsenek onartu egin zuten.

Konde batek bere gaztelua proposatu zuen, non prostituta ospetsuek beren espiritismo saioak zelebratu ohi bait zituzten sarritan.

Biolinista berak hautatu zuen kontzerturako salarik egokiena.

Eta hara joan zen asteburu batetan.

Zazpi andere eta hiru gizon ziren. Zeinetan, bat iada zaharra eta bi gazteak. Guziz, sei homoseksualak eta lau normalak. Zazpi masokistak eta bat sadikoa. Bi diruagatik bakarrik.

Gaueko hamabietan hasi behar zen kontzertua.

Biluzik zeuden guziak, ganderailuen argi zalantzakorrean.

Biolinista bere biolin kaxa besapean zekarrela ailegatu zen.

Aldez aurretik kobratzeko ohitura zuela esan zuen. Ordaindu zioten.

Biolinaren kaxatik metraileta bat atera zuen orduantxe.

Hamabi eta laurdenetan, kontzertua amaitu egin zen.

Biolinista, biolin kaxa biletez beterik irten zen gaztelutik, eta niri, bere aktuazioaren laburra konduan hartuez gero, garestiegi kobratu zuela iruditu zitzaidan.

## PUNDU BIREN ARTEKO DISTANTZIARIK LABURRENA

Amerikar magnate kortxogile baten alaba aberatsa

Urrezuri Itsasertzean zuten etxandira iritsi zen.

Hirugarren egunean, bere urrezko orratza, diamantezko buru eta guzi ohostu ziotela ohartu zen.

Neuri hots egin zidan, hauziaren kargu hartzeko.

Magnatearen alaba etxandian instalaturik zegoen: hogei gonbidaturekin, sei zerbitzari fidelekin, sukaldari beltz batekin, lau zakur eta bere azken senarrarekin.

Ene klienteak bere gonbidatu eta zerbitzarien inozentziaz zihur zegoela esan zidan, sukaldari beltzaren inozentziaz ere bai. Ez bait zen arrazista.

Berehala, ene susmoak senarrarengana zuzendu ziren.

Dena dela, lau zakurren erradiografia egin nuen.

Froga harek ez zuen gertaera misteriotsu hura argitu.

Nik susmatzen nuenez, berehala agertu zen albandorratza senarrak zedukala.

Hain zuzen ere, bizkarrean iltzaturik zedukan, ezkerreko omoplatoaren azpian.

Hileten ondoren ere, lapurketaren arrazoiak enigmatikoak ziren, neuk ere ez bait nituen igarri.

Ondorengo gertaerek ere ez dute deus argiagotzen, baina gutienez amaiera zoriontsua emango diote istorio triste honi.

Aste bi geroago, magnatearen alaba hura ezkondu egin zen, berriro, errege handi ia herbesteratu batekin.

Eta, finean, loria irabazi zuen Hollywood aldean.

## AURKIBIDEA

## ARGITARATUTAKO LIBURUAK

12. Yon Etxaide
GORROTOA LEGE
*elaberria*

*13. Patri Urkizu*
*ETSIPENEZ*
*elaberria*

14. Joxemari Iturralde
NAFARROAKO
ARTIZARRA
*elaberria*

15. Jose Antonio Mujika
ITZALAK
*ipuinak*

16. Xabier Amuriza
OROMENDERRIETA
*elaberria*

17. Juan Kruz Igerabide
NOTRE-DAMEKO
OIHARTZUNAK
*olerkiak*

18. Xabier Kintana
TA MARBUTA
*elaberria*

19. Gotzon Garate
ALABA
*elaberria*

20. Hasier Etxeberria
IPUIN EZBERDINAK
ETA ERREGALOKOAK
*ipuinak*

21. Gotzon Garate
IZURRI BERRIA
*elaberria*

22. Pio Berasategi
ZAHARRAK BERRI
*ipuinak*

23. Jose Austin Arrieta
ABUZTUAREN 15EKO
BAZKALONDOA
*elaberria*

24. Luis Baraiazarra
HITZEZKO TXIRLORAK
*olerkiak*

25. Marguerite Yourcenar
HADRIANOREN
OROITZAPENAK
*elaberria*
*Jose Austin Arrieta itzultzaile*

26. Txillardegi
ELSA SCHEELEN
*elaberria*

27. Xabier Amuriza
EMEA
*elaberria*

28. Juan Luis Zabala
ZIGARROKIN ZIZTRIN
BATEN AZKEN KEAK
*elaberria*

29. Jon Casenave
ORDU ALFERREN
SEGIDA
*olerkiak*

30. James Cain
KARTEROAK BETI
DEITZEN DU BI ALDIZ
*elaberria*
*Xabier Olarra itzultzaile*

31. Imanol Zurutuza
BEHIN BITAN
*ipuinak*

32. Joseba Sarrionandia
Mitxel Sarasketa
HAMAIRU ATE
*umore beltzaren antologia*

32

Umorea, Paul Valery poetak esaten zuenez, ez da hitz zehatza. Aitzitik, hitz egokia da, umorea, gusto eta koloreetaz eztabaidatzeko eta, gainera, esaldi umoretsu berri bakoitzak emendatzen du betiere bere zentzua. Horrela, azken finean, umoreak eman nahi zaion zentzua du. Zentzundunen mediokritatea eta erotasunaren galbidea ukatzen dituenak bide guti baditu, umorea da horietariko bat. Ez dakit nork esan zuen, baina egia da, umorea desesperatuaren gortesia dela. Horregatik, umorerik egiazkoena beltza da. Umore beltzean irribarreaz gainera badago mistizismo bat, baina ez mistizismo dultze eta zerutiar bat, umoristak izatez infernutiarrak bait dira.



elkar s.a.

EUSKAL LIBURU ETA KANTUEN ARGITALDARIA, S. A.

Esterlines, 10
Tf. 426319
**Donostia**

Pannecau, 52
Tf. 254390
**64100 Baiona**